


# SAKABANAKETA AMAITU
# EUSKAL PRESOAK EUSKAL HERRIRA

Hilabete luzeak joan dira gatazka politikoaren gakoak aldatu direnetik. Egoera politiko berria plazaratu sortu eta aukera berrietarako baldintzak ezarri direnetik. Aieteko adierazpenak, ETAren erabakiak, euskal jendartearen eta nazioarteko eragileen inplikazioak ibilbide berria erakutsi digutenetik.

Gasteizko parlamenturako hauteskundetan ibilbide hori indartuta atera da. EH Bilduk indartsu okupatu ditu jezarlekuak ardura handia bereganatuz. Lehendakari berriak, ordezkatzen duen Euskal Herriaren nahi eta eskaerei positiboki erantzuteko erronka handia du, gatazkaren konponbidean herritarren interesen alde erabakitasunez ekiteko. Aukera ezin hobea du eta indarra ere bai sakabanaketa amaitarazi eta espetxe politika aldarazteko. Hautua egin eta herritarren mandatu eta babesarekin Frantzia zein Espainiako gobernuei aurre egiteko,.

EPPK-k zuzenean berari dagokion eremutik, marraztutako norabidean ekarpena egin du. Posizionamendu politikoa gaurkotuz, Gernikako akordioa izenpetzetik gaurdainoko ibilbidean prozesu politikoa indartuz. Barne zein kanpo antolakuntza sendotuz eta zabalduz, zuzendaritza eta mintzakidetzarekin. Bitartekarien bidez, eragile sozial eta politikoekiko hartuemanak berreskuratuz. Iazko urte bukaerako ekimenekin eztabaidan politikoan kokatuz eta mugimenduak eraginez. Aldi berean, euskal gizarte eta eragileekin batera, Josu Uribetxeberriaren etxeratzea ahalbidetu zuen borrokaldia gauzatuz. Garaipen bikaina lortuz. Beraz, muturreko neurrien aurrean irmo eta prozesuaren garapena sustatzeko urratsak ematen. Zailtasunen gainetik, urtebetean emandako urratsak hor dira. Jarritako oinarriak jauzi berrietarako baldintzetan kokatzen gaitu.

Kontrara, Espainiako eta Frantziako gobernuak bere horretan dira, irekitako prozesuan inplikatu baino, aurreko egoeran bageunde bezala itsuki, enfrentamendu armatuaren gakoetan ainguratuta. Lehena, gako antiterroristan oinarritutako diskurtso eta posizio itxienarekin; bigarrena, bere menpeko euskal lurraldetan aurrekaririk gabeko adostasun zabal eta aukera politikoen beldur bailitzan, oldarturik errepresio gosez, Espainiarekiko lerrokatzea irudikatzen. Biak bortitz oso.

Bi biek gatazkaren ondorioei heltzeko inongo asmorik gabe, espetxe politika blokeo politikoaren ardatz bilakatu dute. Prozesuaren kontrako aingura. Espainiaren kasuan, bizi duten krisi politiko orokortua saihesteko euskarri politikoa. Tinkotasun adierazle. Beste garaipen edota arrakastarik eskaintzerik ez duten honetan.

Aldiz, inolako aitzakiarik ez dute sakabanaketa mantentzeko, ez politiko are gutxiago legalik. Estatuoi, dagokie salbuespeneko egoera eta neurri oro indargabetzea.

Sakabanaketarekin amaitzea, euskal presoak Euskal Herriratzea. Marko legal antiterrorista eta bere ondorioak indargabetzea, auzi politikoekin amaitzea. Estrasburgoko erabakiaren aurka preso eta bahituri gisa mantentzen dituzten 52 kideak berehala askatzea, gaixotasunekin direnak etxeratzea…

Gure helburua libre bizitzea da, Euskal Herri librean. Borrokatzeagatik espetxeratu gaituzte eta borrokatzen segitzen dugu. Hain zuzen, euskal militante politiko eta herritar bezala gure herriaren eraikuntzan parte hartu nahi dugulako kaletik. Gure indarra gainerako herritarrenari erantsi nahi diogulako. Euskal jendarteak hori ulertzen du eta positiboki barneratu du..

Helburu horri begira Kolektiboaren apostu politikoa lehenik sakabanaketarekin amaitzea da. Euskal Herrian denok biltzeak beste baldintzak sortu eta aukera berriak erraztuko dituelako alde guztientzat. 1996ko otsailaz geroztik EHratzeko etenik gabeko dinamikan murgilduak gara. Orain, euskal jendartearen eta eragile sozial, politiko eta instituzionalekin batera urrats erabakiorrak emateko garaian gaude. Jokoan duguna ez da gure egoeraren hobetzea, jokoan dagoena prozesuaren bideragarritasuna da, etsaiak temati eta arduragabeki zapuztu nahi duena eta lor dezan inork permititu ezin dioguna.

Agiri honen bidez, 2013ari begira dinamika berritua iragartzera gatoz:

-abenduaren 29an barau eguna egingo dugu espetxe guztietan sakabanaketarekin amaitu eta Euskal Herriratzea aldarrikatzeko.

-urtarrilaren 12an, Bilbon deitua den mobilizazio erraldoiaren egunean komunikazio greba burutuko dugu, bisita oro bertan behera utziz. Senide eta lagunekin, herritarrekin, Bilbon izango gara. Guztiok mobiliza gaitezen deialdi berezia egin nahi dugu. Hitzordu garrantzitsu honek auzo herri eta maila orotan, dinamika iraunkor eta eraginkorra ekarri behar du.

-urtarrilatik aurrera hileko hirugarren ostiralean doktrinapean bahiturik direnak berehala kaleratzeko eta kondizionalean daudenak ere kaleratzeko ekimenak burutuko ditugu. Hileko azken ostiralean Euskal Herriratuak izateko ekimenak.

**Euskal Presoak, Euskal Herrira!**
**Amnistia eta autodeterminazioa!**

**EPPK, 2012ko abendua**